# BERTSO BERRIAK

## Pello Errota'k Juan Jose Udarregi'ri jarriyak

1

Bertsuak ipintzera
nua ni besteri,
lenago bestek ori
egin dit neri,
ortan sayatu dana
Juan Jose Udarregi,
orain aridana da
Pello Errotari,
itz egiñ aikarri,
arrazoya garbi,
ez gezurrik jarri
mundu parragarri,
zer zeran ikusiko
zaitugu zarri.

2

Premiyua jarriya
zuen an batentzat,
ori jakiña dago
onenarentzat,
Udarregik esperatzen
zubena beretzat,
baño portunatuba
dago Pellorentzat,
an zeuden juezak,
ez oso aldrebesak
neurtutzeko gauzak,
jo naute obetzat,
pena ori daukazula
iruditzentzat.

3

Agorraren amarrian
Azpeitiko plazan
gutxiyenez bost milla
persona bazan
gu ikustiagatik
kantuzko alegrantzan,
gero kontatutzeko
ederrena nor tzan.
Udarregi an tzan
zerbait esperantzan
utsik atera zan,
nere kulpa etzan,
buruba makurtuta
etxera joantzan.

4

Azpeitin sartu nitzan
Nikolas'enian
jarri nitzazun zure
aldamenian
keja batzuk kontatzen
asi ziñanian,
ustez utsegiñ nizun
guzala zunian
moduik onenian
nere alegiñian
lagundu nayian
aitzana gayian,
aztu gabia daukat
zer esan tziran.

5

Alkar esteu galduko
bertan niyon esan,
errespuesta ederra
ni gana etzan.
ia naitare ura
galtzen erraz altzan
berak pentsatzen zuan
obia ote zan,
alako grandezan
ni gandik joan tzan,
Pello asarre zan,
orra itzegiñ zer tzan,
lan orrengatik ori
utzik irten tzan.

6

Pelloren konzientziyak
ez daduka arrik,
Juan Joseri eginda
aziyo txarrik,
jokatzerako zerbait
ark itzegiñ balit
pozik emango niyon
pixka bat bedeixik,
gaizki neregatik
itzegiñ atzetik,
ez dauka arturik
ark nere urrerik,
zergatik ez diyot dan
nik ari zorrik.

7

Diruba ekarri zuban
frantzes famatubak
juzgalariyak berak
zeuzkan autubak
ondo neurtu zitzala
gure talentubak,
zeñek lana egiñ zuban
daude akordatubak,
urre sillatubak
neri entregatubak
nik ditut artubak
ta poltsan sartubak,
bentaja egindit bai
an portatubak.

8

Zure arrazoi batzuek
etzaizkit gustatu
nere kontra zeraden
manifestatu,
gezur asko esan dezu,
gutxi sinistatu,
nerekin etziñaden
iñun ajustatu,
kotxe ta ostatu
dezula gastatu,
dirurik ez artu.
etzaude kontentu,
abisatu zizunari
oraiñ eskatu.

9

Abisatu zizun ori
ez dago pobria,
guk aña izango du
zillar da urria,
bestela ez dakit baño
mingañez noblia,
bestenetik kunpliitu
nai luke ordia,
premiyo neria
ez dala zuria,
sinistia obia,
nik det poderia,
gordetzia libre du
zeñek beria.

10

Judasen ofiziorik
sekula ez det izan
munduban egundaño
nere bizitzan,
ez dakit zedorri ere
ala ote zabiltzan,
prestubak insultatzen
utzaren peskitzan
ez bazendun esan
zuretzat obe zan,
or tzaude bajezan,
ango interesan,
nik zuzen segitzen det
dedan pobrezan.

11

Gezurrarekin artu
dituzu neurriyak
ez nola nai ipiñi
bertso berriyak;
nik esango dizkizut
egiya garbiyak,
nun'ai ondo ematen du
gauz ondo jarriyak
Bernardok erdiyak
ango urre gorriyak
ditu ekarriyak,
berdiñ giñan biyak,
ez du zure lotzarik
Errotariyak.

12

Sekulan ez det egiñ
biar ez dan lanik,
arrazoi ederrikan
zaude emanik,
kulparik izan banu
ez naukan penik,
nik ez nuben lagunari
partitzeko ordenik,
orlako gizonik
ez nun uste zanik,
ez da euskaldunik
orla jardundanik,
zuk aurrian aña lotza
atzian det nik.

13

Partitzeko ordena dala
Udarregik esan du,
gezur kontari dabill
au munduz mundu,
nik premiyua artu ark
sufritu ezindu
pentsatutzen jartzian
ernegatutzendu,
pena artutzendu
berak ezagun du,
neri ezin kendu,
biyotzetik miñ du,
zuretzat ere bazan
egiñ bazindu.

14

Usurbillen izan nitzan
idi apustuban,
Udarregi jauna ure
portunatu an,
egun guziyan alkar
ikusi ez genduan,
ni gan allegatu zan
gabez berauduan,
rtu ostatuan
ni negon lekuan,
asi giñan kantuan
biyok lau puntuan,
ordukuaz altzaude
sentimentuan?

15

Bajatu zeradela
diyozu zardadez
nedonire aurrera
nua edadez,
berrogeita amairu urte
nik Eguarri gabez
Bautismua emangoizu
ala dan edo ez,
nere kabidadez
nabil giza legez,
gaitzikan izanez
nik uste dedanez,
ez nabill arrotuta
gaztetasunez.

16

Ara bertso berriyak
don Jose Alkañi
Pello Errotakuak
diska ipiñi,
lenago ori bera
egindit neroni,
bueltak ipintzia
zitzaidan komeni,
bizirik banaiz ni
osasunez ongi
oinbeste armoni
ez geyago ibilli,
adiskide maitiak
ikasi ongi.

IMP. MACAZAGA
RENTERIA

Juan Jose Belban
"Agirregaña" Usurbil
agosto 1961